# MY BLOODY VALENTINE - Loveless (Creation Records 1991)




1- "Only Shallow" (Butcher/Shields) – 4:17
2- "Loomer" (Butcher, Shields) – 2:38
3- "Touched" (Colm Ó Cíosóig) – 0:56
4- "To Here Knows When" (Butcher, Shields) – 5:31
5- "When You Sleep" – 4:11
6- "I Only Said" – 5:34
7- "Come in Alone" – 3:58
8- "Sometimes" – 5:19
9- "Blown a Wish" (Butcher, Shields) – 3:36
10- "What You Want" – 5:33
11- "Soon" – 6:58

Kevin Shields (ahotsa, gitarra)
Colm O'Ciosoig (bateria)
Bilinda Butcher (ahotsa, gitarra)
Debbie Googe (gitarra apala)

**Grabaketa**: 1989-1991
25 estudio
14 injeniari
500.000 $

**Diskoetxea**: Creation

**Ekoizleak**: Kevin Shields, Colm O'Ciosoig

Esan ohi den bezala, umeak eta mozkorrak dira egia esaten duten bakarrak, baina antzerkian ere ezaguna da isilik geratzen den eroaren figura, besteek ezkutatzen dutena isiltzen ez duen eroa, alegia. Kevin Shieldsek, My Bloody Valentine taldearen buru pentsalariak, hiru figura horiek batzen ditu, umea, eroa eta mozkorra, ez modu literalean, noski.

Shields ez dago guztiz bere senean: Krisi existentzialean dago 1991n Loveless argitaratu zuenetik, bere bizitzako lanik gorena egin eta amildegira begiratzen duenaren krisian.
Ez du erraza izan behar hogei bat urte dituen batentzat jakitea ezin izango duzula ezer hoberik egin, eta litekeena dela bere burua errepikatzen hastea. Lehen, klasikoen garaian, errazagoa zen hori asimilatzea: Alejandro Magnok mundu erdia hartu zuen mendean botelloia egin beharrean, eta handik gutxira, gainbeherari beldurrik izan gabe hil zen. Orain, pitzaduraz betetako ongizatearen gizartean, eta 500 urtez bizitzearekin amesten dugun honetan, oso gogorra da barneratzea agian talentua agortu egin zaizula. Edo hala izan behar du; izan ere, ni eskasa naiz, eta eskastasunetik hitz egiten dut.

Shield mozkor hutsa da, alde musikaletik, behintzat: batez ere, zarata, muturreko distortsioa edatea gustatzen zaio, eta ondoren feedback delakoak agintzen dion moduan hasten da munduari begiratzen. Baina Kevin berezia da; gu mozkortu egiten gara eta etxera heltzean margotzeari ekiten diogu, baina ez dugu momentua harrapatzea lortzen eta paperean hieroglifiko ulertezin eta/edo lotsagarriak baino ez dira agertzen; berak, ordea, kontrolatu egiten du sentsazio hori. Bere mozkorraldi zaratatsuak direla-eta talentu handiagoa dauka: 'Loveless' diskoan, erabat menderatu zuenean, lotsagarri utzi zituen taldearen aurreko saiakerak, adibidez 'Isn´t Anything'. Guk guztiok gure "gau handia" (Adamok abestu zuen moduan, edo Mikel Goñik ateratzen guztietan erakutsi nahi duen moduan) izan dugun bezala, ezerk geldituko ez gintuen gau horietako bat, Loveless bera da zarata hutsa maite duen Kevin Shieldsen gaua. Eta gau horrek biharamuna ere ekarri zion, jakina: 18 urteko isilaldia.

Eta azkenik, Shields ume hutsa da. Musikaz duen ikuspegian islatzen da jolasten ikasten ari den bi urteko ume baten xalotasuna. Gure semeak egunero gauza berriak probatzen, oztopo berriak gainditzen dituen bezala, Kevin Shieldsek Lovelessekin lortu zuen bere irudimenaren harresiak gainditzea eta harresien atzean zegoena ederra zela jakitea. Eta onegia zela frogatu zuen, disko batean grabatu zuen, eta atseden hartu zuen (ala ez).

Baina, San Balentin Loveless entzunez ospatuko dugunez, galdera batzuk egin beharko genituzke: maitasun-diskoa al da hau? Ziur aski, ez. Egia esan, txortan egiteko diskoa da. Agian ez gaur, ez orain, ezta bikotea izanda ere (ez dut uste ulertuko duenik, zaratazko geruza bat beste baten gainean eta beste bat... -Basmatti dixit bere kanta batean- arreta galtzea ekar lezake). Ez ba, gaur ez, baina disko honekin

egingo dugu txortan XXIV. mendean, Cylondarrak matxinatzen direnean eta apokalipsiaren tronpetak entzuten hasten garenean.

Zertan nabil, ba? Apokalipsiaren soinuak 'Blown a Wish', 'Sometimes' edo Lovelesseko edozein kanta bezain eder eta asaldatzaile izan beharko luke.

P. Roberto J. www.elruidodelacalle.com/wordpress

---

Según la frase hecha, sólo los niños y los borrachos dicen la verdad, pero en las obras de teatro también es conocida la figura del loco que no se calla nada de lo que los demás esconden. Kevin Shields, mente pensante de My Bloody Valentine, es cualquiera de esas tres cosas, loco, niño y borracho, aunque no de forma literal.

Shields no está demasiado cuerdo: lleva en crisis existencial desde que en 1991 editara Loveless y mirara al precipicio de quien ha completado su cumbre vita
l. No debe de ser fácil para alguien en la veintena saber que nunca vas a poder hacer nada mejor, que lo más probable es que comiences a repetirte. Antes, en los tiempos clásicos, era más sencillo de asumir: Alejandro Magno conquistaba medio mundo cuando debía estar de botellón y, al poco, moría sin miedo a la decadencia. Ahora, en este estado del bienestar con tantas grietas y cuando fantaseamos con la posibilidad de vivir más de 500 años, es muy duro saber que has consumido tan rápido tus cartuchos de talento. O debe de serlo, puesto que yo hablo desde la mediocridad.

Shields es un borracho, aunque sea musicalmente hablando: sobre todo, le gusta beberse el ruido, la distorsión llevada al límite, hasta que empieza a ver el mundo según el feedback le dicta. Lo que hace especial a Kevin es que mientras nosotros, cuando nos emborrachamos y garabateamos algo al llegar a casa, no logramos capturar el momento y sólo se quedan en el papel jeroglíficos indescifrables y/o demasiado vergonzosos, él controla la sensación. Su borrachera ruidosa le hace tener aún más talento: cuando en 'Loveless' la controló de manera absoluta, dejó desnudos anteriores intentos del grupo, como 'Isn´t Anything. Si todos hemos tenido nuestra 'gran noche' (como cantaría Adamo o intenta demostrar cada noche de copas Mikel Goñi), una de esas donde de verdad nada podía pararnos, 'Loveless' es la de Kevin Shields, amante del ruido a palo seco. Y lo es con resaca incluida, claro: le costó 18 años de silencio.

Finalmente, Shields es un niño, porque en su mirada musical está la inocencia absoluta de quien, con dos años, está aprendiendo a jugar. Igual que mi hijo prueba cada día cosas nuevas, barreras que antes no había sido capaz de franquear o ni tan siquiera de imaginar, Kevin Shields consiguió con Loveless traspasar los muros de su imaginación y encontrarse con que lo que había detrás era bello. Y vio que era demasiado bueno, lo grabó en disco, y descansó (o no).

Pero, ya que vamos a celebrar San Valentín con Loveless de por medio, hay que preguntarse: ¿es éste un disco de amor? Seguramente, no. Es, realmente, un disco para follar. Quizás no hoy ni ahora, incluso aunque tengáis pareja (no creo que lo entienda, todas esas capas y capas de ruido -Basmatti dixit- pueden desconcentrar). No, hoy no, pero sí es un disco con el que follaremos en el siglo XXIV, cuando los Cylon se hayan rebelado y suenen las trompetas del apocalipsis.

¿Qué digo? El apocalipsis también debería sonar tan bello y pertubador como 'Blown a Wish', 'Sometimes' o cualquier otra canción del "Loveless".

P. Roberto J. www.elruidodelacalle.com/wordpress